


ELKARREKIN BARAKALDOREN

GIZARTE PROIEKTUEN ETA EKINTZA KOMUNITARIOA

I. DEIALDIA

**Deialdiaren oinarriak**



**AURKIBIDEA**

# 1. AURKEZPENA

*Elkarrekin Barakaldok (Podemos, Ezker Anitza-IU, Equo-Berdeak eta Independenteek osatutako koalizioa) helburu sozialak eta ekintza komunitarioak dituzten proiektuetarako laguntzen I. deialdia egiten du. Ekimen honen bidez, Barakaldoko herritarrei zuzendutako gizarte-proiektuak aitortu eta lagundu nahi dira.*

*Deialdia irabazi-asmorik gabeko erakundeen helburu sozialetarako eta ekintza komunitarioetarako proiektuei zuzenduta dago, batez ere egoitza soziala Bizkaian duten eta beren jarduera Barakaldon garatzen duten fundazio eta elkarteei. Gizarte-ekintzak gizarte-erronkei modu kolektiboan heltzen dieten ekimen eta proiektu guztiak biltzen ditu, auzoetako bizi-baldintzak hobetzeko eta gizarte inklusiboagoa eta demokratikoagoa ehuntzeko asmoz.*

*Hautagaitza aurkezteak berekin dakar proiektuaren erakunde titularrak hurrengo oinarriak onartzea.*

*Aurkeztutako proiektu guztien artean, balorazio-batzorde batek hautatuko du irizpideetara ondoen egokitzen den erakundea.*

# 2. ESKATZAILEAK

Eskatutako dokumentazioa posta elektronikoz bidalita (elkarrekin.barakaldo@gmail.com) aurkeztu beharko dira proiektuak. Ez da onartuko dokumentazioa eskura ematea. Erakundeak Eusko Jaurlaritzaren Elkarteen Erregistroan egon behar du proiektua bidaltzerakoan eta garatzen den bitartean.

Proiektuak aurkezten dituzten gizarte-erakundeek hurrengo baldintzak bete beharko dituzte:

[1] *Auzoak eraikiz 2020 deialdiarekin lotutako kontsultak helbide honetan egin behar dira: elkarrekin.barakaldo@gmail.com*

- Legalki eratuta egon, nortasun juridikoa izan, eta eratu zirenetik gutxienez urte 1eko antzinatasuna izan behar dute.
- Irabazi-asmorik gabekoa izatea. Inola ere ez dira onartuko gremioak, unibertsitateak edo elkargo profesionalak (irabazi-asmorik gabekoak izan edo ez).
- Dagozkion erakunde publikoekiko lan-, zerga- eta administrazio-betebeharrak eguneratuta izatea.
- Irabazi-asmorik gabeko erakundeen zerga-araubideari eta mezenasgorako pizgarri fiskalei buruzko abenduaren 23ko 49/2002 Legean ezarritako irabazi-asmorik gabeko erakundeen zerga-araubide berezia aplikatzea aukeratu izana egiaztatzea dagokion ekitaldirako.
- Sexuagatiko edo generoagatiko bereizkeria egin edo onartu dutelako (emakumeen eta gizonen berdintasun eragingarriari buruzko 17/2015 Legearen arabera) administrazio-zigor irmorik edo kondena-epai irmorik ez izatea.
- Langileekiko eskubideak edo betebeharrak urratzeagatik administrazio-zigor irmorik edo kondena-epai irmorik ez izatea.
- Boluntariotza proiektuan eta egiten dituen jardueretan integratzen duen egitura izatea.
- Erakunde onuradunak edo onardunek, proiektuaren garapenarekin zerikusia duten komunikazio, dokumentu, publizitate eta web orri guztietan, eta leku nabarmen batean proiektuaren izenarekin batera, honako aipamena erakutsi behar dute: "Elkarrekin Barakaldorekin lankidetzan bultzatutako proiektua".

**Berariaz baztertuta geratzen dira:**

- Enpresa edo enpresa-taldeen fundazioak eta elkarteak, sindikatuenak, aurrezki-kutxen gizarte-ekintzak eta gobernu-erakundeak.
- Higiezinetan inbertitzea dakarten azpiegitura-proiektuak (eskuratzea, eraikitzea edo eraberritzea).
- Babesletza-proiektuak.
- Kolektibo ahulei zuzentzen ez zaizkien eta adierazitako jarduera-ildoetan ardazten ez diren proiektuak.

## 3. HELBURUA

Diru-laguntzaren xede izango den proiektuaren esparrua ekintza komunitarioa eta asoziazionismoa izan behar dute, dagozkien berezitasunak kontuan hartuta, eta interes publikoko edo sozialeko jarduerak sustatu beharko dituzte, helburu hauekin:

- Zerbitzu publikoekin lankidetzan (hezkuntza, osasuna, gizarte-zerbitzuak) ekintzak/proiektuak planteatzea.
- Komunitatearen bizitzan proiektu eta egiteko modu berriak planteatzea, auzotarren inplikazioarekin. Haien kalitate estrategikoagatik auzoetan ekintza komunitarioak garatu, indartu eta sendotzen dituzten proiektuak.
- Proiektuaren erabakiguneetan eta jarraipenean auzoko erakundeak sartzea planteatzea.
- Hiriko metodologia komunitarioa haztea.
- Erakundeen arteko lankidetza sustatzea, baliabideen aprobetxamendua, sareko lana eta ekintza komunitarioko eta baterako laneko proposamen berritzaileak bultzatzeko.
- Eta interes komunitarioa sustatzen duten eta gizarte-sarearekin lan egiten duten beste proiektu batzuk.

## 4. HAUTAGAITZAK AURKEZTEKO MODUA

Diru-laguntza eskatzeko beharrezko dokumentazioa honako hau izango da:

**D1**. Diru-laguntza eskatzeko eskabidea. Erantzukizunpeko adierazpen bat dauka. Deialdiarekin batera doa eredua.

**D2**. Proiektua deskribatzeko formularioa. Deialdiarekin batera doa eredua.

**D3**. Aurrekontu-inprimakia. Deialdiarekin batera doa eredua.

**D4**. Elkartutako erakundeek sinatutako akordioa, hala badagokio, proposatutako proiektua gauzatzeko elkarteko zati bakoitzaren partaidetza eta ekarpena adierazita, eta baita erakunde bazkide bakoitzaren aldetik aplikatu beharreko diru-laguntzaren zenbatekoa. Elkartea eratzeko erakundeen arteko osagarritasun-maila esplizituki aipatu beharko da. Deialdiarekin batera doa eredua.

**D5.** Sinatutako adierazpena proiekturako administrazio publikoen edo beste erakunde pribatu batzuen diru-laguntzarik jaso ez bada,. Diru-laguntzak jaso badira, lotutako zerga-betebeharrak egunean izatearen aitorpena sartu beharko da. Deialdiarekin batera doa eredua.

Ezinbestekoa da D1, D2, D3, D4 eta D5 dokumentuak batera aurkeztea, posta elektronikoz bidalita deialdian sartzeko.

Dokumentu horien ereduak hemen eskura daitezke:
**https://elkarrekinbarakaldo.info/proyecto-comunitario-auzoak-eraikiz-2020/**

Nahitaezkoak ez diren baina erantsi daitezkeen dokumentuak: proiektuari atxikitzeko gutunak. Gutun hauen helburua hirugarren eragileen babesa erakustea izango da, Auzoak eraikiz 2020 deialdian aurkeztutako proiektuari dagokionez.

Proiektuak aurkezteko epea 2020/11/13an hasi eta 2020/12/05ean amaituko da, 23:59an.

Epe hori luzatzeko edota aldatzeko aukera egongo da, eta, nolanahi ere, aurrez iragarriko dira Elkarrekin Barakaldoren kanal ofizialen bidez (https://elkarrekinbarakaldo.info /, sare sozialak[1]).

Erakunde onuradunari eskatuko zaio aurrerago zehazten diren egiaztagiriak aurkezteko.

2 https://www.facebook.com/ElkarrekinPodemosBarakaldo. https://twitter.com/Elkarrekin_Brk. https://www.instagram.com/elkarrekinbarakaldo/.

Hurrengo eskabideak  automatikoki baztertu ahal izango dira:

- Epez kanpo edo beste bide batetik bidalitakoak.
- Eskabide-inprimakia atal guztietan behar bezala bete ez bada. Kasu honetan, erakundearekin harremanetan jarriko gara, konpon dezan, betiere epearen barruan badago.
- Hautagaiak oinarriekin bat ez badatoz.
- Aurkeztutako dokumentazioa osatu gabe badago edo eskatutakoaz bestelakoa bada, erakundearekin harremanetan jarriko gara, konpon dezan, betiere epearen barruan badago.

## 5. DEIALDIAREN EZAUGARRIAK

Proiektuak 2020an hasi dira, eta 2021ean ere hasi daitezke. Diruz lagundu daitekeen gehieneko zenbatekoa 1.150 € edo gutxiagokoa izango da.

Aurkeztutako proiektuaren aurrekontuaren %100eraino lagundu ahal izango da diruz, betiere 1.150€ko gehieneko zenbatekoarekin. Aurkeztutako diru-laguntzaren eskaera 1.150€tik gorakoa bada, deialdian ezarritako gehieneko zenbatekoa hartuko da eskatutako zenbatekotzat.

Proiektu bat esleitu ondoren aurrekontua agortzen ez bada,  puntuazio-ordenaren araberako hurrengo proiektua berrikusiko da, gerakina emateko. Horrela, deialdi honetarako esleitutako diru guztia agortu arte.

Pertsona juridiko bakoitzak gehienez 2 proiektu aurkeztu ahal izango ditu deialdira, baina, gehienez, proiektu bakarreko diru-laguntza eman ahal izango da. Hala ere, pertsona juridiko bat ezin izango da talde bateko kide gisa diruz lagundutako beste proiektu baten onuradun izan.

Deialdi honetan, gastu finantzagarritzat joko dira proiektuaren garapenarekin zuzenean lotutako kostuak:

- Langileen kostuak.
- Materialak eta hornidurak.
- Ekipamendua.
- Proiektuarekin zuzenean lotutako administrazio- eta kudeaketa-gastuak, betiere eskatutako laguntzaren % 5 gainditzen ez badute.

Oro har, honako hauek ezin izango dira finantzatu:

- Erakunde eskatzailearen mantentze- eta funtzionamendu-gastu arruntak.
- Kreditu-eragiketen, gastuen edo finantza-kostuen amortizazioa.
- Higiezinak erosteko, eraikitzeko edo eraberritzeko gastuak eta instalazioen gastuak.
- Dieta, egonaldi eta bidaien gastuak.
- Kongresu, mintegi, jardunaldi eta antzekoetan parte hartzeak edota antolaketak eragindako gastuak.

## 6. BESTE DIRU-LAGUNTZEKIN BATERAGARRITASUNAK

Diru-laguntzak bateragarriak izango dira beste administrazio, erakunde publiko edo pribatu batzuek emandako beste edozeinekin.

Hala ere, diru-laguntza horien zenbatekoak, lortzen diren diru-sarrerekin eta jarduerara bideratuko diren baliabide propioekin batera, ezin izango du gainditu garatzen den proiektuaren guztizko kostua. Kostu hori gaindituz gero, soberakina zati proportzionalean itzultzeko edo diruz lagundutako jarduera edo proiektua handitzeko eskatuko da.

Bateragarriak izango dira beste programa batzuetarako udalek ematen dituzten diru-laguntzekin, non eta deialdiak ez duen kontrakoa ezartzen.

## 7. PROIEKTUAREN JUSTIFIKAZIOA

Justifikatzeko unean, proiektua garatzeko egin diren gastuen jatorrizko fakturak aurkeztu beharko dira. Halaber, tiketetan emandako zenbatekoaren %10a justifikatu ahal izango da, proiektuaren zenbateko osoaren 115€ gehienez. Justifikazioa aurkezteko epea 1,5 hilabetekoa izango da, proiektua amaitzen denetik hasita. 2020an amaitutako proiektuak aurkezten badira, epea astebetekoa izango da.

## 8. PROIEKTUAREN LURRALDE-EREMUA

Aurkeztutako proiektuek Barakaldoko edozein auzotan izan beharko dute esku-hartzea.

## 9. PROIEKTUAREN BALORAZIOA

Proiektuaren balorazio teknikoa egiteko, proiektua balorazio-irizpide (BI) batzuetara egokitzen den hartuko da kontuan. Irizpide horiek, guztira, ezin izango dira inoiz 11 puntu baino gehiagokoak izan.

| | | |
|---|---|---|
| **BI 1** | Erakunde eskatzaileak proiektuaren arloan duen ezagutza edota esperientzia | 0/0,5/1 |
| **BI 2** | Proiektuaren koherentzia eta bideragarritasuna | 0/0,5/1 |
| **BI 3** | Proiektuaren iraunkortasuna denboran | 0/0,5/1 |
| **BI 4** | Genero-ikuspegia txertatzea | 0/0,5/1 |
| **BI 5** | Ingurumenaz sentsibilizatzeko eta kontzientziatzeko gaitasuna | 0/0,5/1 |
| **BI 6** | Lankidetzako eta komunitateko lan-prozesuak indartzeko gaitasuna | 0/0,5/1 |
| **BI 7** | Proiektuaren hartzaileengan espero den eragina | 0/0,5/1 |
| **BI 8** | Lurraldearekiko eta haren sare sozioekonomikoarekiko lotura | 0/0,5/1 |
| **BI 9** | Proiektu bererako administrazio publikoaren edo erakunde pribatuaren diru-laguntzarik jaso ez izana aldeko punto batekin baloratuko da | 0/1 |
| **BI 10** | Onura publikoko erakundea izatea | 0/1 |
| **BI 11** | Euskararen erabilera | 0/0,5/1 |

## 10. BALORAZIO BATZORDEA

Balorazio Batzordea gehienez 4 pertsonak osatuko dute, eta %50ean emakumeak izango dira. Koalizioaren gertuko pertsonak izango dira, zinegotziak kanpoan geratuz, eta honako profil honekin:

- Barakaldo eta bere gizarte-ehuna ezagutzen dituzte.
- Gizarte-dinamizazioko eta komunitate-ehuneko ezagutza dute.
- Genero-ikuspegiari eta ingurumen-sentsibilizazioari buruzko ezagutzekin.
- Balorazio Batzordeko kideak elkarren artean osatu beharko dira.

Balorazio Batzordeak lurraldeei lotutako beste solaskide eta informatzaile batzuk kontsultatu ahal izango ditu, aurkeztutako proiektuak baloratzeko.

## 11. DEIALDIAREN FASEAK

**1. fasea:** Jasotako hautagaitza guztiak, aurreko puntuan ezarritako baldintzaren batengatik baztertuak izan ez badira, Balorazio Batzordeak ebaluatuko ditu. Batzordeak erakundeari eta aurkeztutako proiektuari buruzko dokumentazio gehigarria eskatu ahal izango du, hautagaitza ebaluatzeko beharrezkotzat jotzen bada. Erakundeak 5 egun natural izango ditu dokumentazio hori emateko, eskatzen zaion unetik aurrera.

**2. fasea:** Batzordeak aurrez azaldutako irizpideen arabera baloratuko ditu proiektuak. Berdinketa gertatuz gero, honako irizpide hau aplikatuko da berdinketa hausteko:

- Proiektuaren hartzaileen kopurua.

Deialdia 2020/12/31 baino lehen ebatziko da. Parte hartzen duten erakunde guztiei mezu bat bidaliko zaie, atal bakoitzean lortutako puntuazioarekin. Alegazioen kasuan, Balorazio Batzordea arduratuko da aurkeztutako alegazioei erantzuteaz. Edonola ere, deialdia amaitutzat emango da 2020/12/31n.

Lankidetza-akordio bat ezarriko litzateke Elkarrekin Barakaldo eta erakunde onuradunen artean banku-transferentzia egiteko.

## 12. JARRAIPENA ETA JUSTIFIKAZIOA

Deialdiaren onuradun den proiektuaren kudeaketa tekniko eta finantzario egokia egiaztatzeko, jarraipen- eta justifikazio-arau hauek ezarri dira:

- Onuradun gisa hautatutako erakundeek proiektuen aurrerapen-mailari buruzko txosten bat aurkeztu beharko dute proiektuaren garapenaren erdian, eta amaierako txosten bat proiektuaren bukaeran, aurrez definitutako betekizunen arabera. Txosten horietan proiektuaren bilakaeraren lekuan bertako irudiak jasoko diran. Erakunde irabazleek konpromisoa hartu beharko dute beren proiektuari esker laguntza jaso duten onuradunen kopurua adierazteko eta jakinarazteko. Halaber, amaierako txostenean zehatz-mehatz zehaztu beharko dira deialdiko dirua zer partidetara bideratu den.

- Proiektuan funtsezko aldaketarik egin nahi bada proiektua garatu bitartean sortutako gorabeherengatik, Elkarrekin Barakaldoren berariazko baimena beharko da, erakunde onuradunak aldez aurretik hala eskatuta.

- Elkarrekin Barakaldok edozein unetan eskatu ahal izango du informazio teknikoa eta finantzarioa, proiektuaren gauzatzea egiaztatzeko edo kontrolatzeko.

## 13. DATUEN BABESA

### Tratamenduaren arduradunaren identitatea:

Tratamenduaren arduraduna izango da, eta hurrengo atalean deskribatzen diren helburuetarako jardungo du: "Elkarrekin Barakaldo", aurrerantzean, "Arduraduna".

### Arduradunaren harremanetarako datuak:

Posta helbidea: Herriko Plaza 1, 2. 48901 Barakaldo (Bizkaia).

### Datuak gordetzeko epea:

Emandako datu pertsonalak gorde egingo dira hitzarmen-harremanak dirauen bitartean, erabiltzaileak datu horiek ezabatzea eskatzen ez badu eta ezabatu behar ez badira legezko betebehar bat betetzeko edo erreklamazioak formulatu, egikaritu eta defendatzeko beharrezkoak direlako.

Erabiltzaileak baimena errebokatzen badu edo ezabatzeko eskubidea baliatzen badu, bere datu pertsonalak blokeatuta gordeko dira haien tratamenduaren ondorioz sor daitezkeen erantzukizunei erantzuteko legez ezarritako epeetan.

### Datuen helmuga:

Deialdi honetarako, datuak soilik laguntzen onuradun diren erakundeei komunikatuko dira; izan ere, lagatze hau beharrezkoa da, diru-laguntza behin emanda, egiaztagiriak emateko izapide egokiak kudeatu ahal izateko.

### Pertsona interesatuen eskubideak:

Pertsona interesatuek haien datu pertsonalei sarbidea daukate eskubidez, eta baita datu okerrak zuzentzeko eskatzekoa ere, haien tratamenduari mugak jartzea edo, hala badagokio, ezabatzea eskatzea, hartu zirenean zeukaten helburuak burutzeko jada beharrezkoak ez direnean.

Baldintza jakin batzuetan eta haien egoera partikularrarekin lotutako arrazoiengatik, pertsona interesatuak haien datuen tratamenduaren aurka egon ahal dute. Arduradunak datuak tratatzeari utziko du, hurrengo baldintzak salbu: premiazko legezko arrazoiak, edo izan daitekeen erreklamazioen aritzea edo defentsa.

Halaber, pertsona erabiltzaileek haien datuen portabilitatea eskatzeko eskubidea izango dute, teknikoki posiblea den kasuetan.

Datuen jabe diren pertsonek haien eskubideak erabiltzeko, idatziz zuzendu behar dira hurrengo helbidera: Elkarrekin Barakaldo. Herriko Plaza 1, 2º. 48901 Barakaldo (Bizkaia), identitatea egiaztatzeko dokumentua emanez ere.

Datuen jabe diren pertsonek Datuak Babesteko Espaniar Bulegora zuzendu behar dira: C/Jorge Juan 6, 28001 Madrid edo haien egoitza elektronikoan www.agpd.es, batez ere erabileraren arduradunaren aldetik haien eskubideak bete ez direla ikusten badute.